

AZALEKO IRUDIA
**Joseba Arregi Erostarbe**
1946
Azpilleta baserria, Arantzazu. Oñati

Atxilotze data: 1992ko martxoaren 29a.



Centro Penitenciario alicante II (Villena)
Carretera Nacional 330, km. 66
03400 Villena
Alicante



**atara**miñe
EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

ISBN: 978-84-942777-1-9
Lege gordailua
Depósito legal
Dépot légal
SS 1391-2014

**atara**miñe 2014
**www.literaturakoadernoak.org**



# Aurkibidea



**Jesus Mari Zalakain Garaikoetxea**
1947
Tolosa

Atxilotze data: 2007ko azaroaren 30a.



Centro Penitenciario Dueñas-La Moraleja
Carretera P-120
34210 Palencia

# HITZAURREA

Nola esaten zaio ezetz lagun bati laguntza eskatzen dizunean? Nola ukatu zure kolaborazioa bi hamarkada kartzelan egondako kideari? Areago, mesedez, arren, otoi eskatzen dizunean. Egia esan, inolaz ere ez. Soilik arrazoi horrek azaltzen du nire presentzia ATARAMIÑEko orriotan. Eta ohore bat da, oroz gain.

Orriotan, hain zuzen. "Orriok" hitzaurrekoak baitira. Beti iruditu zait presoari bere gogoetak, irudimenezko lerroak, fikziorako gaitasuna, pentsakizunak edota barne-isuriak adierazteko plataforma bat eskaintzea. Jon Etxeandia zenak zuzenean azaldu zidanetik oso argi daukat. Asko ez dut jarraitu. Ez dut orain arte sekula parte hartu, dela pudoreagatik, dela badaukadalako beste plataforma iraunkor bat nire kontuak askatasunez plazaratzeko. Herria 2000 Elizan argitaratu ditut aldika nire gogoetak "kartzelako kronikak" delako espazioan. Abusatzea iruditu zait beste espazio bat ere betetzea.

"Hitzaurrea zuk egitea pentsatu dugu" jakinarazi dit adiskideak. Pentsatzen jarrita, hitzaurrea bat zer demontre den aztertu dut. Era askotakoak daude: aldizkari barruan dagoen mamia laburbiltzen dutenak, ideia nagusiren bat jorratzen dutenak, edukia perspektiba orokorrean kokatzen dutenak. Zoritxarrez nik ezin dut holako ezer egin: ez dut ezagutzen zer idatziko den, autoreak zeintzuk diren, gai nagusirik dagoen, fikzioa gailentzen den, poesia, errelato alegorikoak edo beste zerbait. Beraz "nire esku" dagoena egingo dut, nire esperientzia eta eskarmentua eskainiz, gai librean saiatu. Gutxi-asko konpartitua izango den ez jakinik, nire-nirea da, nire baitako errotarriak zazpi urteotan

ehotu duena eta nire antena pertsonalek hauteman dutena. Ez naiz inoren izenean ari, beraz. Nire gauzak dira: nire miña eta nire mihia.

18/98 sumarioa burututa hona ekarri nindutenean, Konfuzioren bidetik barne-bidaian murgiltzera nindoala jakinarazi nuen, beste kide presoen bizitza konpartitzen nuen bitartean. Halaxe egin dut. Bidaiaren abiapuntua "barrura begiratzeko leihoak" filmeko testu grabatuan dago. 15 hilabete geratzen zaizkidanean berriro Euskal Herrian lur hartzeko, aukera aproposa izan daiteke hau behin-behineko balantzea egiteko. Ondoko hau:

## Kartzelaldia ez da denbora galdua

Esaldi heterodoxoa ematen du. Eta bada, kartzelaldia parentesi gisa hartuz gero. Egitasmo asko desegiten ditu kartzelaldiak, baina ez da parentesia. Bizitzaren joanean batzuoi egokitu zaigun atala baizik, bizitzaren zati bat edonola ere, aurrekoak azaltzen duena eta ondorengoa baldintzatuko duena. Inork ez du kartzelara sartzea eskatu, Koldo Izagirreren Agirre zaharrak izan ezik. Ez da igurikatutako egoera bat, baina zozketa itsuko emaitza ere ez. Maila batean edo bestean Euskal Herriko askapen-prozesuan parte hartu dugunontzat gerta zitekeen aukera zen hemen amaitzea. Horren jakitun bizi izan gara, arriskuak arrisku. Besterik da prozesu justu baten ondorioz gauden hemen...

Sartu orduko konturatu nintzen denbora dela kartzelak debalde eskaintzen duen bakarra, mendean hartu ezin duena. Presoarentzat bere salbabidea ere bada, txaboloaren estutasunak, harresien astunak eta barroteen burdinezko lerroek zein

norberaren grina txarrek burua jatea nahi ezean. Norberak taxutu behar du denbora ahalen eta zaletasunen arabera: esku lanetan, ikastetetan, idazketan, kirolean, etab. Kartzela lasaia egokitu zait niri. Ez galdetu zergatik. Beteranoei entzunda, ez daukat kexatzerik: ez naute zigor ziegetan isolatuta eduki, ez naute jazarri eta jipoitu, ez dut tira-bira gordinik ezagutu, ez naiz bereziki xaxatua sentitu. Errepideko loterian ez dut seniderik galdu. Txikikeriak nozitu ditut nik.

Nire zaletasunei atxiki natzaiei, bizirauteko: irakurri-idatzi-binomioari, eta azken boladan aurkitutako zeregin kuttunenari, itzulpengintzari hain juxtu. Ez da meritu handia. Besterik egiten ez dakit! Hala, 3 urtez katalana ikasten jardun ondoren 4 liburu itzuli ditut: Rodoreda-ren "Diamantearen plaza", Pedrolo-ren "Makina izkribua", El Hachmi-ren "Azken patriarka" eta Pla-ren "Kale estua". Ordenagailua erabiltzea debekatuta daukadanez Joserra Etxebarria eta Joseba Azpeitia adiskideei ezker lortu dut nire eskuzkribuak pikatu eta orraztea. Ingelesez hizkuntzan "intermediate, B1+" mailara iritsi naiz zerotik hasita. Gastelaniaz idazten eta irakurtzen irakatsi diot Extremadurako analfabeto bati... eta sekula baino kirol gehiago egin dut, nire adinean (66) egokiena dena eginez: patioan itzuliak kendu. Hori orain arte. "Hemendik sano atera behar da" errepikatu dut eskutitzetan. Ez dakit bada! Urtebetez geroztik inflamatuta daukat eskuineko aldaka eta txikituta meniskoa. Ordu erdi jarraian ibiltzeko gauza ez naiz; beraz, ederra panorama!

Aurreko guztia egiten nuen bitartean nire nortasunaren eta ibilbidearen zoko-mokoak miatzen ibili naiz, errukirik gabe: deskubritu dudan guztia ez zait gustatu. Gauza batzuk batere ez. Norbaiti interesatzen ba zaio eskuz atonduta daukat nire bizitza

osoa hartzen duen “biografia kritikoa”. UPVko pankartaldi luzean (16 urte) nire/gure ahalmenen jabe izan nintzen; kartzelaldiak nire mugak erakutsi dizkit. Zein ona naizen arazo kolektiboetarako eta zein kaxkarra nire-neureak diren gauzak kudeatzeko. Zer gogorra den zure buruari aitortzea: “honekin ezin diat”. Nork esan zuen inoiz ez dela berandu? Bizitzak gordeta zeuzkan faktura batzuk ordaindu behar izan ditut. Nik eskatu gabe argitu den dizdiraz azaldu zaizkit bizitzako pasarte, erabaki, hankasartze, hutsegite eta urratsak. Aurrerantzean nola kudeatuko dudan ez dakit. Gauzak pazientziaz hartzen ikasi dut. Bakardadea izaten ere bai. Baina nire buruaz irri egiten ez. Nolanahi ere den helduago, xumeago, apalago eta orekatuago aterako naiz zulo honetatik.

Zenbat adiskide ditudan dastatzeko atsegina eman dit kartzelaldiak. Lastima lokutorioko kristal madarikatuak lapurtu dizkidan besarkada, muxu eta laztanak. Begi batzuetan malkoak antzeman ditut, beste batzuetan irrigoxoa, izarniadura berezia; bostekoa zabalik leiharrean nirearen bila. Kalaka, berriketa, konpromisoa, haserretxoaren bat edo beste. Zenbat jende solidario! Harreman oso maiztua geneukan familiako kide batzuekiko lotura sendotu da. Noiz erakutsiko diegu zor zaien ohorea presoaren senar, emazte, bikotekide eta maiteñoei? Soilik galdu duzunean sentitzen duzu ausikia. Nola izango da denbora galdua kartzelaldia!

## Gauzak ez dira beti amestu bezala amaitzen

Kartzela gogoeta politikorako unea ere bada. Sartu eta gutxira ezker abertzalearen ziaboga edo egokitzapen orokorra suertatu zen. Zerbait banekielakoan, ezustean harrapatu ninduen. Durduzaturik bizi izan dut. Batik bat gauzak zein azkar aldatzen ari ziren (edo zein egosirik zeuden) ezin ulerturik; eta halabeharrez, modu pasiboan. Etxe honetan izandako eztabaida hutsaren hurrengoa izan zen, auskalo zergatik. Gerora, aparteko arazorik gabe sartu gara korronte nagusian. Gogoan daukat nola esan nion une hartan lokutoriora etorritako adiskide min bati: "akabo epika eta lirika". Eta esan nahi nuen, alegia, hemendik aurrera gure politika egiteko modua hitz lauz egingo dela. Ulertarazi nahi nion hartutako bidea prosazkoa izango dela. Ez nuke okertu nahi baina gure bide honek ez ditu poeten bertsoak zorroztuko, bardoen mihiak askatuko, poema kolektiboak sortuko. Musikariek ez dituzte euren sokak tenkatuko, ez eta ipuinlariek pertsonaia eredugarririk topatuko, gazteen bihotzak ez dira hor sutuko. Prosa xumeak, gauzak azaltzeko; ez literatura majikoa. Intuizio bat izan zen, baina horri atxikita jarraitzen dut. Zergaitik? Bada gauzak ez direlako gehienetan guk amestu bezala gertatzen. Bizpahiru aldiz ezagutu dut hau bizitzan: zuk borroka egiten duzu helburu baten xerkan, eta amesten duzu nola izango den amaiera, Xabier Letek abestutako "askatasun-eguna", eta gero, bide erdian, xedera hobeto iristeko, egiten duzun birajean, konturatzen zara ustez printzipio ziren gauzak tresna huts zirela; eta kasurik onenean amaiera erdietsirik, ohartzen zara eskuartean daukazuna uste baino arruntagoa dela, lore-jokorik gabea, ereinotz-koroarik gabe: hitz lauzkoa. Hala ere, etzazu borroka egin, eta hutsean geratuko da ahalegin guztia.

## Badago bestelako euskal herritar sakabanaturik

Orain arteko kartzelaldian 32 kide ezagutu ditut Dueñasen. Dozena batekin konpartitu ditut bizipenak. Orain lau gaude, binaka banatuta. Pena bat badut, gure kolektiboa hain zabala izanik, beste askorekin ezin konpartituagatik. Sakabanaketa da arau, eta aberastasun hori ezagutu gabe aterako naiz, itxura guztien arabera. Arrazoi izango du Juan Mari Olanok dionean: "kartzelakoa da estatuei geratzen zaien giltza bakarrenetarikoa". Sakabanatuta gaude, eta beste euskal herritar mordoa ere bai. Inozo ni, ez nekien hori gertatzen zenik! Badago aldea: gu sistematikoki sakabanatzen gaituzte; besteak, portaeraren arabera. Euskal gazte asko ezagutzeko parada izan dut; ez oso sakon, egia esan. Batzuk euskaldunak, beste batzuk asilbestratuak, eta beste asko euskaldun hutsak. Nire auzo Santutxukoak ere bai, batzuk. Badira beste hainbat, jatorriz Magrebekoak, Latinoamerika edo Errumaniakoak, Euskal Herrian kokatu direnak edo bertara joateko asmoa dutenak: "diru gehiago dagoelako". Ospe ona daukagu euskaldunok patioetan -preso belaunaldien zuzentasunaren seinale-. "Gehiago errespetatzen zaituzte" diote. Poztekoa, daukaten perspektiba. Gehienak lapurretan ibiliak dira, bertokoen antzera drogaren eraginez sarri. Aldatzeko asmorik ez zaie ikusten. Askotan pentsatzen jarri naiz: da al daukagu horiei buruzko politika zehatzik? Nola guretuko ditugu kanpotarrak euren izaera errespetatuz?; aldi berean nola askatuko ditugu -eurak zein bertokoak- xede txukunik gabeko bizimodutik? Musulmanen kasuan ez ditugu ezagutuko euren erligioa aztertu gabe. Adi! Kide dezente ikusi dut gizarte-gaietan trebatzen, animatzaile sozio-kultural, integratzaile, etab. izateko. Soldatarik ez dakit, non saiatu behintzat izango dute.

**Legea, zein lege?**

2013ko abenduan idatzi zuen EPPK-k azken aldiko agiri funtsezkoena. Ez dut esan beharrik ados nagoela. Baina amorruz hartzen dut hau, legeari buruz esaten diren pasarteei buruz bolo-bolo dabilen interpretazioa: "legea betetzea erabaki dute". Nahasgarria baita. Legea betetzeko prest omen gaude, eta ez omen gara betetzen ari. Sofisma bat dago hor. Legea aipatu dugu agiri horretan, edozeinek dakielako ze garrantzia daukan legeak gizartean. "Ados gaude aurrera begira legeek eta beren aplikazioek berebiziko papera dutela, eman behar diren urratsak sendotzeko izan behar baitute". Baina gu lege berriari buruz ari gara, justiziara hurbiltzen den legeaz. Oraingoaz ez, alegia.

"Premiazkoa" da salbuespen neurri eta egoerak bertan behera uztea. Tresneria judizial-juridikoa egoera politikora egokitzea, kartzela politika errotik aldatzea eta sakabanaketari lehentasunez amaiera ematea". Soilik testuinguru horretan, lege-aldaketa egiten bada: "Horiek horrela, ontzat eman dezakegu gure etxeratze prozesua (…) lege-baliabideak gauzatzea". Hala ere, sakabanaketari amaiera emateko prozedura legalari jarraituz eskariak egitea erabaki dugu, besteak beste horretarako legea aldatu beharrik ez dagoelako. Baina bi gauza desberdin dira, nahastu beharko ez liratekeenak, egiari zor. Nik biziki eskertuko nuke, gutxienez gure jendea, zehaztasun haundiagoz mintzatzea.

*Dueñas, 2014ko abuztuan*



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958
Eibar

Atxilotze data: 2000ko urriaren 17a.

Liburu bi argitaratuak ditu:
*Ametsen txokoan bizi naiz* (Ataramiñe, 2011).
*Ainarak herrira itzuliko dira* (Ataramiñe, 2014).



Centro Penitenciario Córdoba
14014 Córdoba

## Kartzelatik bi aldiz diot

1
Hemengoa ez naizelako diot,
ezin dudala txokoa gozatu,
ezta ere euskaldun gisa bizi,
ele maitea ganoraz usatu.
Zuekin lokabe bizi nahi nuke
nortasuna osoki suspertzeko,
auzolanean sinisten dudanez
burujabetza zuzen jasotzeko.
Jendarte hau ondu nahi dudalako
ez nintzateke joango atzerrira,
lagata maite ditudan mendiak,
Kantauri itsasotik urrutira.

2
Aturri eta Ebro artean diot,
dagoela arbasoen etxea,
hainbat belaunalditan landu zuten
euskaltasunarena den eltzea.
Mugarik ez dugunez ezarriko,
elkartasuna dugu sendotuko,
koloretsuak diren kulturekin
harreman duin bat bihotzez sortuko.
Ama-Lurra guztiona delako
Euskal Herrian dugu on zainduko,
behar duen herriari diogu
onura musu-truk zipriztinduko.

*2013ko irailaren 15ean*

## Gatibu baten oldozpenak

Beharbada gaur egun garden baino lausotuta
agertuko naiz zure oroimenean,
ahaztuta edukiko duzu nire ahotsa
hitzekin pozten nizun sentimenean,
zoritsu konpartitu genituen bizipenak
hutsalak izango dira orainean.
Oldozpen erdiragarriekin nabilelako
iretargirik gabe ohe barnean,
zirtzilduta dudan arima etengabe dabil
erreguka kartzela lar ilunean,
ekaitzak ekar dezala, otoi, kendu zuena,
ostadarra noizbait zertuko denean.

*2013ko irailaren 29an*

## Gatibu baten esperantza

1
Espetxeak ez du espiriturik,
ezta egileak sentimendurik,
gatibuak dio bihozmindurik,
hormatzarren barruan hesiturik,
orainean mingots katigaturik.

2
Nahiz lartxo zaio marguldu oroitza,
esperantza da gaztetako ditxa,
garunean dabil aske irritsa,
berreskuratu gura luke hitza,
iraganak ostu zion bizitza.

*2013ko irailaren 29an*

## Ilusio, kartzelan onura zara

1
Ilusio zu zara
kartzelan hauspoa,
Pazientziak zurekin,
heze du erroa,
umo dakidan mardul
pozaren nardoa,
ibiltzeko egoki
penaren aroa,
topatzeko bidean
baikorki geroa.

2
Kartzelako aldapa
denez erraldoia,
ilusio senduna
da neure saroia,
ideien arragoa,
asmoen gidoia,
dastatu gura nuke
gaztainen sasoia,
bihotzak egotz dezan
hemengo pozoia.

3
"Ilusioa" dio
irrikaz otoiak,
baztertzeko gogotik
torturaren lohiak,
ziegan sastatzen nauen
herraren puntxoiak,
aurrerantz jarrai dezan
desiren atoiak,
halaber euskarri den
euskal arrazoiak.

4
Nire gainbehera da
ankerren afana,
madarika dezadan
petral iragana,
Ilusio etorri
amultsu nigana,
gaindi dezadan aise
etsipen txaldana,
ahaz ez nezan dela
herria imana.

5
Ilusio ekarri
dir-dir esperantza,
ken dezadan larrutik
hainbeste arantza,
kartzelaldia doa
geldiro gorantza,
gorputza fisikoki
aldiz beherantza,
zurekin dut ordea
isiltzen arrantza.

6
Ilusio zut gaude
sokari eusteko,
urruti egon arren
gertu ekiteko,
atsekabe minkorra
lerden erauzteko,
mila motibo dugu
zurekin joateko,
kate barik herrian
bizitzen hasteko.

*2013ko azaroaren 17an*

## Saguzarren terapia

1
Saguzarrak dabiltza iluntzean
eltxo petralak abil ehizatzen,
mintzezko hegotxoak astinduta
nekaezinak dira hegatzen,
udan etxartean dute gauero
ikuskizuna dohain moldatzen,
birak eginez ari direnean
kemena zaizu ziplo goratzen,
momentu on hauei esker ditut
ezbai eskasak erraz haizatzen,
zeintzuk diren gure asmo zuzenak
ditudalako nik gogoratzen.

2
Ilargiarekin hobeto ditut
lagun txikien birak preziatzen,
tamalez giltzatuta naukate
barren atzetik nago behatzen,
saguzarrak gautarrak direlako
eguna lotan dute pasatzen,
ni aldiz goiztirian esnatzen naiz
gatazka ondu nahian pentsatzen,
gauerdiko terapia honekin
esperantza ez zait emetatzen,
izaki duin hauen aurrean diot
ari garela sano askatzen.

*2014 urtarrilaren 5ean*

## Akelarrea, ministroa eta gatibu ohien aldarria

1
Durangon izan dute parada
berri on bat emateko,
gatibu luze egon direnak
gure alde jarduteko,
prentsaurrekoan elkartu dira
agiria babesteko,
Kolektiboak esan duena
batasunez berresteko.

2
Mendekua nahi duten ankerrek,
zakar zaizkigu oldartu,
guk dioguna zuzena dela
ez dute gura onartu,
aurkeztu dugun proposamena
nahi dutelako ihartu,
konponketaren lurra kakaztuz
lubakian dira sartu.

3
Barne ministro espainiarrak
bota dizkigu harriak,
espe gaudenak sentitzen gara
horren menpe zaurgarriak,
herriak garbi nahi duena da
moztu azkar lokarriak,
hitzaren bidez eror daitezen
gaurko kartzela larriak.

4
Ministroaren jarduera da
oro arbuiagarria,
akelarrea dela esan du
bakearen aldarria,
Euskal Herrian dugu gatazka
zarratzeko egarria,
bihur dakigun bortxarik gabe
bizitza zoragarria.

5
Jorge omen da bere grazia,
eitea kasernakoa,
inkisidore haiek bezala
sorgin ehizen kastakoa,
sua isiotzen dabilelako
gizon ganorabakoa,
ziegan gabiltza gordin sufritzen
pizkundearen ukoa.

6
Akelarrea zen emazteek
gauez zegiten bilera,
sendabelarren jakinduria
mantentzeko zuten ere,
bestalde esan nahi du bordela,
ulermenaren galera,
eztabaidetan faxistek duten
eguneroko jarrera.

7
Urratsak eman ditugun arren
zezena haserre dago,
horren orroa da "gu hobeto
gero eta makurrago!".
Bere aitxak lez Francoren txortan
samina nahi du gehiago,
galtzaileen ta irabazleen
zorua erein nahiago.

8
Euskoak ari gara zintzoki
etorkizuna prestatzen,
atzoko minak zentzuz gabiltza
pixkanaka oneratzen,
nahiz Alla, "Zera" eta Urquijo
dabiltzan dena zanpatzen,
espeok josi dugun mezua,
bihotzek dute bermatzen.

*2014ko urtarrilaren 26an*

## Arkaitz zurekin bizi gara

1
Saminak uzkurtu gaitu
otsailaren bostean
arratsaldeko bostetan
jo du gure atean,
ametsetan zaude ziegan
zeure nahien urtean,
Elorrio da maitea
ilundu bat batean.

2
Nahiz hemen edo geurean
tamala den kartzela,
zigorraren estresa da
deserrian krudela,
sasoia gelditzen zaizu
pixkanaka motela,
larrutik ordaintzen dugu
herraren erregela.

3
Heriotza kartzelara
gazte datorrenean,
sentimena negarrez da
sartzen etsipenean,
kideak gaude lur jota
zurtz zure hutsunean,
elkar ikusiko dugu
zirraren egunean.

4
Maiatzean zain zeneukan
zoritsu askapena,
laztanaz bizitza libre
baten iragarpena,
gauminean handitu da
etxean minki pena,
oroitzak ekar dezala
arimen sustapena.

5
Kartzelaldia zuretzat
ez da izan erraza,
sarri jasan duzulako
ankerren tratu basa,
mendekuaren aurrean
zu zinen duin demasa,
gorrotoari zenion
kendu sano arnasa.

6
Aizu, eskertzen dizugu
oro aldarte ona,
gogoetan ez da sorgor
galduko zure sona,
etxartean izan zara
guretzat zoriona,
kartzela goibela duen
alaitu klariona.

7
Monzonek esan zuen lez
ortzian zara zertu,
Ageda zenaren gaua
dir-dir duzu edertu,
taupadetan zaudelako
gure barnean gertu,
zure zirriek digute
adorea suspertu.

8
Anboton ta Udalaitzen
zu zaude harkaitzetan,
txapela txukun jantzita
nare goiz-argietan,
Euskal Herrian geroa
ez dago zalantzetan,
gurekin biziko duzu
pizkundea plazetan.

*2014ko otsailaren 23an*

## Aniaizi bihotzetik

1
“Maitasuna da bide bakarra”, idatzi duzu adoretuta,
halaber “Maitasunetik dagigu borroka”, senak eskatuta,
zure mezua gurea delako, bat gatoz kartzelan zurekin,
zu bezala bizipenak ari gara konpartitzen Arkaitzekin,
herri bat izan nahi dugulako aspalditik gaude lar sufritzen,
horregatik elkartzen garenean bihotza zaigu txit hunkitzen,
ez dugu nahi ankerren eran gorrotoa jendartean ziztatu,
hobetsi dugu gatazkaren konponketa maitasunez sustatu.

2
Lubakiak laga nahi ditugulako estalita bazterretan,
haize berriak itxaropena ereiten dihardu alorrean,
kitzikatu gintuen ideala ernatu zen maitasunean,
bertan daude iraganean joan zirenak taupaka orainean,
geroan horrela jarraituko dute gurekin harremanetan,
Arkaitzekin ta eurekin sentituko dugu zirrara plazetan,
borroka dagielako maitez ta musu-truk sentimental finak,
pozarren diot, herrian bizi direla krabelin gorri minak.

*2014ko maiatzaren 11n*

## Ixuako txirtxila

1
Txirtxila geldo dabil kaiolan
arin zebilen Ixuan,
nabaria da ez duela nahi
biziraun etxe barruan,
uraza pixka bat jarri dugu
jan dezan toki estuan,
ogi mamia ardotan busti
has dadin mozkor kantuan,
egonezinik dago gaixoa
gatibu baten moduan.

2
Txirtxila ez zen mendian jaio
naturatik at hiltzeko,
etxe bateko bakardadean
egunak igarotzeko,
Ixuan egon beharko luke
hegoak fier torratzeko,
uda sasoian aldiro kri-kri
belardia girotzeko,
bere intsektu espeziea
arrakastaz ugaltzeko.

3
Kili-kilia sentitu zuen
kantuz ziharduenean,
ziri batekin egin zioten
zuloan zegoenean,
umeak zeuden adi bere zain
ziplo atera zenean,
gertu zeukaten kutxa txikian
sartu zuten ezinean,
isildu egin zen Ixuatik
baldar zeramatenean.

4
Ezin dut jasan hola ikusi
Ixuako intsektua,
bizitza oro diogu txartu
bilakatuta mortua,
Ikerri diot gero esango
kezkatzen nauen kontua,
negarrez hasi izan daiteke
beraren arrapostua,
baina garbiro adierazita
ulertuko du hautua.

5
Zelaira gara batera igo
goizaren hastapenean,
Ixuan lasai gaude bakarrik
aske uzteko unean,
Iker, adostu dugun bezala
sukaldean geundenean,
goxo diogu biok esango,
"Txirtxil hoa zuzenean,
hire kantuak jaso dezala
erantzunik gauminean".

6
Txirtxila bizkor aldendu zaigu
txoko ederraren bila,
ez du izango neke handirik
berez delako abila,
abuztuaren ondoren nare
ailegatu da iraila,
negulehena beharrez dago
presatzen izaki pila,
Ama-Lurrek jo dezan gerora
udaberriko ezkila.

*2014ko uztailaren 13an*



**Aitzol Iriondo Yarza**
1977
Lasarte-Oria

Atxilotze data: 2008ko abenduaren 8a.



Bois D´Arcy - Maison d´arrêt des Yvelines
5 bis, Rue Alexandre Turpault
78395 Bois d´Arcy
Frantzia

## *Hitzak bigarren udaberrian*

A)

Oraindik ere Gran Viatik dabil gizona,
oraindik ere gizona;
Korronte Jendea;
Tantarik ez
Berezirik,
Dena ura
Gizona.

Eskua luzatu du
helduleku bila;
Barrurik ez du,
ez daki
hutsa
baduenik.
Zarata
isildu denean
eskua luzatu du
helduleku bila;
Eta,
oraindik ere gizonak,
Biblian bilatu du
zentzua.

Errekan behera
jolaska
abilago dira
Ur tantak:
Emeak
Arrak
Bereziak
Ezberdinak;
Harrien talkaz
pozez
jauzika
zipriztin;
Ezberdin
Berezi;
Uraren
eta uharren
eta erreken
eta ibaien
eta itsasoen
sorgin.

Kale kantoian
nago
gaur:
Ni naiz
[Gu garelako].
Zorrotzako zerrategiak
amaitu zuen basoekin;
Itsasoa agortu
eta zikinduko zuten
barkuak eraikitzeko.
Herri lurrak goldatuz
nabil
gaur:
Gu gara
[Ni naizelako].

Etxe orratzen erreinuak bidali du
Labe garaiena gerizpera
Antzinago honek kanpandorreena bezela.
Zergatik? Norentzat?
Hainbeste
Izerdi
Denbora
Odol
Neurona;
Gaur arte;
*Homo hominis lupus*
mendez mende
piramidea beti,
(Eta uztarria lepoan)
arrazoi gabea,
Eta lur-azpian:

Galdera eta Jakintza.
Zergatik? Norentzat?
Hutsean muina,
garden eta argi.
Izerdia
Denbora
Odola
Neurona:
Ni banaiz
[Gu bagara].
Hemen gabiltza
Ni eta Zu
gaur,
sorgin;
Sortuz ta sortuz
Iturria emari.

*Zazpi atedun Tebas hura nork eraiki zuen? Liburuetan errege izenik baizik ez da ageri. Erregeek garraiatu ote zituzten harritzar handiok? Eta hainbatetan borrokatua izan zen Babilonia nork jaso zuen beste hainbestetan?*

## *Hitzak hirugarren neguan*

A)
Neguko lozorro hotza etxarte harresituan.
Txarrantxa zorrotzak dio: *"alperrik ari zarete"*
Murruak, bizkar aldean, takoi doinu azkarra dakusa;
oin hotzen jabeak, espaloi luzea besterik ez.
Begi-puntuan ezarri du zentinelak
gatibu bat,
erruletaren jolasean.
Goizaldera aurkituko du giltzariak dilindan
gatibu bat,
*erruletaren jolasa*.
Txarrantxa zorrotzak dio: *"etsi ezazue"*
Eta murruaren bizkar aldean
oin hotzen jabeak ez du ezer entzun
ondoko autoen urruma besterik ez.

B) JON *Oxkaxeko lepoan*
Bi minutu eta berrogeita zortzi segundotarako poema

Egunsentia pagadian,
basoa lainopean
izaki isilak ageri dira
enborren artetik
eskutan arkua eta geziak dituztela
hontza uluka
erroiren bat karranka
eta pausuak entzunezinak...
Elkartu dira
keinuka hitz eginez
BAT dira, eta
estrategia adostu dutenean
oihu isil bat entzun da:
"Guazen!"

# Hitzak hirugarren udaberrian

## Gure Amaren Haizea

[Ireki ditut begiak eta ikusi dut zutik nire aitaren etxea]

Zabalduko ditut birikak
eta gure amaren bularrak hartuko du arnas
bularrarekin
arimarekin
besoekin
besarkatu eginen dut gure amaren zuhaitza
Lurraren alde
Herrien alde
Emakumearen alde
Justiziaren alde
euskaraz eginen du aldarri gure amaren ahotsak.
Josiko ditut eskuak eta
etxegabeekin
despedituekin
auzo-ginekin
ikasleekin
berreratu eginen ditu
etxea ola auzoa eskola
gure amaren zentzuak.
Adarkatuko zaizkit sustraiak eta altsuma berrietatik
edanen du gure amaren suak
Sendatuko zaizkit zauriak azalean bihotzean ariman
eta gure amaren anfora ez da berriro hautsiko.

Marraztuko ditut ezpainak aurpegian eta
sarrailarik gabe
mehatxurik gabe
menpekorik gabe
lukurrerurik gabe
eginen du irri gure amaren haizeak.
Ni hilen naiz,
Nire arima galduko da,
Nire askazia galduko da;
baina gure amaren haizeak
dantza eginen du.

## Hitzak laugarren udaberrian

Udaberriak euria eta hotza. Bedatsek lainoa. Borda goxoan bildu gara hitzak. Bihotzean goxo-min atximurka egiten diguten hitzak. Mitxoleta gorria lehena, eguzki errainu ahularen argitan, airean dabilen xuxurla, amuntze berdea kadiran kulunka, amantala altzoan, kaiera morea galtzarbean, leihotik dakusa urmaelaren ur-azalean jitoan dabilen orbel nabar bakartia ele isilen asanbladara teila gorrien abaro epelera bildu nahirik menturaz haize-ufadaren baten ahurrak lanparretik erreskatatuko duen esperantza poxia bihotz zimelduan gordeta, lamara, haztamuka harrizko hormak laztanduz dabilen sator itsuaren abelera, su garren itzal efimeroek segundoro antzaldatzen duten irudi-dantza keinukaria. Amilotx mottodunaren txio dundurixuak ohartarazi du ele isilen asanblada hasi dela. Atea jo dute eta ainubea laiotza eta ospela sartu dira erreguka arren eta mesedez pasatzen uzteko. Heldu da ebazpena: iruntzi dena!

## Hitzak eihartzean ihartzen (laga)

[Orbelari begira lausotu zaizu soa
imnosian jaustera doakizu pausoa]

Horman zintzilika. Ez dabiltza.
Orbelak begiekin solas
Horman zintzilika. Ez dabiltza
Begiak orbelekin jolas
haizeak malkoa, malkoa isuri

Zuloetan barna glug haitzulo itzeleraino
oroi-min urrinak
itzarririko lurrinak.
ihartzea eta hiltzea.
denbora arrotz honi
leizea bahitu
higatuko al du haitzik haizeak?
hiltzetik hotzetik ahitzetik
lurrunduko ote zaitu haizearen antzeak?

Horman zintzilika. Ez dabiltza.
Orbelak begiekin solas
Horman zintzilika. Ez dabiltza
Begiak orbelekin jolas
haizeak malkoa, malkoa isuri

Oi! karrika estuetako harri lauzak
Oi! patrika hustuetako zerri askak
ezkaratz lizunduetan
zirri isilen dantzak
mozkorraren oihu antzak

Horman zintzilika. Ez dabiltza.
Orbelak begiekin solas
Horman zintzilika. Ez dabiltza
Begiak orbelekin jolas
haizeak malkoa, malkoa isuri

esaiozu orbelari
hari usnaka esnatu zarela
        ez duzula nahi
malko gehiago isuri

esaiozu orbelari
zirri isilen dantzari zarela
        han dituzula zain
                karrika estuetako harri lauzak

esan, esan orbelari
zergatik ez dabiltzan hormetan zintzilika
edo, oihartzunak zergatik dabiltzan intzirika

esan, esan orbelari
        ez duzula nahi
                leizea
denbora arrotzari itzultzea
        ez duzula nahi
ahitzerik hozterik hiltzerik
ez mina begietarik sartzerik
          ez duzula nahi
haitzulo barreneraino malkorik isuri

karrika estuetako irrien oihartzuna
zain duzula
esaiozu orbelari

## Hitzak bosgarren neguan

A)
Hitz marratuak dira behinola geltokian lur harturiko oinen lorratzak.
Gehienetan pasa egiten dira trenaren ibilguaren barruan,
lur hartu gabeko oin ikusezinen gisan.

B) [kabinak estuegi zaizkigu gerriak, mihiak, bihotzak dantzan askatzeko]

Eta zer, maitia, dantza egingo bagenu?
Hel naza eskutik.
Zer moduz, laztana?
Ontsa, eta berori?
Arin egiten du dantza berorrek, fin eder, buztanikara dirudi berorrek
Arra ala emea?
Ez ditut bereizten
Berebizikoa da
Biraka ari gara
Eta?
Zorabioa heldu zait
Eta?
Berorren ezpainak behar nituzke
Miazkatzeko ala zupatzeko?
Zer du diferentzia?
Berebizikoa da
Zein nahi du orduan?
Berorren beharrak dira, ez neureak
Berorren arnasa irensteko, beraz. Ez dut zorabiatu nahi
Koldarra da berori
Bai
Bira gaitezen astiroago, azkarregi ari da berori

Bai
Miazka bitza orain neure ezpainak
...
Orain esan bekit, miazkatzeko ala zupatzeko?
Zer nahi luke berorrek?
Koldarra da berori. Berriro ere.
Chopin da?
Bai.
Orduan miazkatu nahi nituzke
Zergatik?
Maite zaitut
Horrek ez du zerikusirik, ez ginen zuka ari.
Zukaratu gaitezen, laztana
Ez da Chopinen estiloa
Zorabioa datorkit berriro ere
Eman bekit eskua
Bero zaude
Ohartu da noizbait, berriro diotsot: ez da Chopinen estiloa.
Ez dut malenkonia maite, ez momentu honetarako
Arrazoi du-zu
Izerdia darizu
Esan dizut lehen, bira gaitezen astiroago.
Nahiko nuke, beharko nuke. Bihotzak narama, ordea
Utziozu mintzo dadin
Beldur diot
Ez gainditzean datza koldarkeria
Biluztu gaitezenbiraka birakamiazkagaitezen xurgagaitezenbi-
rakabirakazorabiagaitezen
Koldarra zinela uste nuen
Ez naiz ni izan
Bai, zuk utzi diozu
Zurearen erantzunik ba ote du?

Ni ere koldarra naiz
Ez, zu ez
Preso dut neurea
Ez nigatik
Ez, zugatik ez. Nigatik da
Dantza egiteko beharra zeukan
Dantza egiteko beharra geneukan
Amaitu da Chopin
Goazen
Nora?
Elkar miazkatzera
Non?
Ah, ahaztu zait, kondoirik baduzu?
Ez
Beti bezala.
Miazkatzeko ez da behar
Ezin dugu, laztana.

## Hitzak zirikan seigarren udaberrian

A)
Doinu batek -aski, ez da gehiagorik behar- aireratzen dizkigu
hitzak
Airean dabiltzan hitzak ehizatu eta, iaio izatera behintzat,
kaieratzean
Kaieratzean bizitza itzaltzen zaien instantean -museoan bizirik ba ote?-,
hitz hegalarien laurdena, hauts artetik deskubriturik.
Irakurtzen zabiltzan hau,
horixe besterik ez.

B)
Teknosferaren etxe orratzetan
Saldukeriaren erreinu gotorretan
Zure zain dira
Dorretik begira
Bizitza zer den ahantzi zutenak
Teknosferako urde alaenak!
Zu diruaren banpiro
Zu bihurtzeko berriro
Zure letagin zorrotzen zain

...

Euskal Herriko etxe orratzak, Espainia eta Frantziaren euskarri
Herrien kontrol dorre, herritarren anai handi.
*Okerbideak ezpaitaki mintzaerarik,*
*berdin tratatzen baitu*
*erdalduna*
*eta*
*euskalduna.*

...

Trapuak IKUR dira
Haize garelako,
Su garelako,
Lur garelako.

Fereka berriak,
Gar berriak,
Lurrin berriak,
datoz eta,
Omen ditzagun zaharrak
Haiza ditzagun berriak

[Ikurrak trapu-souvenir bihurtu baino lehen]

...

Hatzak zerurantz
Takoi hotsak oholtzetan
Makilak eskuan
Ttakun hotsak oholetan
Biserak kaskoan
hip hop hotsak mikroetan
Azal berriz bebil
Herria gure zainetan

...

Neure eginez Nik hitz bat hemen
Zeure eginez Zuk margo bat han
Denona da eta inorena ez
Hark gauzka eta gurea ardura
Zer da?

C)
euria ari du
Korsika ari du
eskutitz bat ari du
Begi bat ari du leihoan irrista

## Hitzak eta isiluneak. Udazkenari begira (sega)

Eta berorrek, zenbatgarren trena hartuko du?

## Babelia

**Edo zeldako hausnarketa txoroak prentsari begira.**

1. Jorge Pardo deritzon musikaria dago geltoki batean instrumentu eta laptop batekin. Ez dakit zergati A. datorkit burura, bere bidaia hartan Danimarkara. Hile luzea eta geltokiak, harekin lotzen ditut.
2. Zarata ez dut laket: billarreko bolena dator ate erdi-irekitik (inzirrikatun!) eta alboko txaboloko musika altuegia gibeleko leihotik.
3. Euli bat hegan zelda barruan, eguraldi onaren seinale. Ta hala da -eguzki ederra dator leihoan barrena.
4. Amsterdameko plaza bat aipatzen da artikulu batean –ez da Damm ezagun hura, gure The Flying Pig hostaletik hurbil zegoena, beste bat da. Mutil argentinar hura, tren geltokia hantxe bertan, coffee shop-ak, taberna ta kafetegiak, bizikletak, M. itsututa. Hori dut gogoan.
5. Kanak ditut paparrean. Pluralean. Fact.
6. Don Delillo New York da, Paul Auster bezala. Edo Lou Reed zena. Ez dakit Delillo izena Kirmeni irakurri nion lehen aldiz, edo ez. Urteek aurrera egin ahala idazleek diotena da izenburua eta usu, ez idazten dutena.
7. Argazki triste baina inpaktantea: Ulrike Meinhof-en hileta 1976an, batzuk aurpegia ezkutatzeko imintzioa eginez. Zazpi urte nituen nik orduan. Tortura Zuria Brigada Gorrien aurka.
8. Dickens London da, nire bigarren (lehen?) etxea. Nire bizitzaren laurdena jada hemen, tontamentian. "La vida iba en serio".

9. Babelian aurkezten ta komentatzen dituzten liburuen %80-90en originalak ingelesez dira. Itzulpenez bizi dira hispanoak, besteok bezala. Gure txikitasunaren zio guztiak uxatu zaizkit. *I´m not small, you are just bigger than me, that's all.*
10. "El viaje a Budapest" deritzon liburua. Furgoneta bat, zazpi lagun on, erteuropa, eklipse bat… Buda+Pest.
11. Lehen mundu gerra inbokatzen duen argazki eder baina tragikoa. Ze gutxi behar den garai konplexu bat laburtzeko grafikoki. Ez nuke han egon nahi, baina.
12. "Cedés" irakurri daiteke El Pais-en. Zuzen, ziur aski. Baina garbizalekeria beldurra da, besterik ez.
13. *"La memoria es imperfecta en sí misma. Es importante no inventar lo que nunca ocurrió".* Richard Ford.
14. Jarvis Cooker-en arabera, musika oro entzun egin behar da letrak irakurri aurretik. Itoiz dugu adibide onena.
15. Irakasle-ohiak etikari buruzko liburu berria argitaratu du. Ziur ondo dagoela. Ziur etika hispanoaz ari dela, kosmopolitismoz mozorrotuta. *Again.*
16. Nor kristo zen Moriarty???
17. El Pais progreko Babelia orrialde ezin kosmopolitagoetan, zer erraz aurkitzen diren, "imprenscindibles en toda gran literatura nacional" bezalako harribitxiak.
18. Alain Turing (1912-1954). Homoa. Kastrazio kimikoa. Depresioa. Suizidioa. Haginkatutako sagarra zegoen gorpuaren ondoan.
19. En qué consta "la buena vida"?
20. *"Si para algo sirve el arte (y creo que sirve para poco), es para ayudarnos a convivir con la incertidumbre"* – Luis Oranes.

21. 1906an, L. jaio zen urtean, Alsazia alemana zen.
22. *"Cuerpo de mujer, blancas colinas, muslos blancos/te pareces al mundo en tu actitud de entrega".* Neruda.
23. El derecho, esa aproximación siempre imperfecta a la Justicia.
24. George Orwell-ek, Arthur C. Clark-ek, edota Ray Bradburyk etzuten aurreikusi ez interneta ezta telefono mugikorra.
25. Lehen postalak heldu zaizkit espetxera: Alaskatik, herritik, Alemaniatik, Irlandatik. Munduaren beste muturrera bizitzera doan lagunaren eskutitza. Gaur da lagun bereziaren eguna, antipodetakoa. Globalizazioak bizi gaitu.

## Olerkia

CCTV,
Blue Sky,
Barbed wire,
Bird flying high.
I´m liying down
in Alcala-Meco´s
exercise yard.



**Mikel Antza**
1961
Donostia

Atxilotze data: 2004ko urriaren 3a.

Espetxeratu zutenetik hainbat lan argitaratu ditu.
*Ospitalekoak* (2010, Susa);
*Bakarmortuko kronikak* (2011, Ataramiñe);
*Atzerri* (2012, Susa); *Z*$^2$ (2013, Ataramiñe).



Albisu Iriarte, Mikel
Réau Sud-Francilien
Centre Pénitentiaire du Sud Francilien
CR 8
Lieu dit du Moulin à Vent
77550 Réau
Frantzia

# INVICTUS
# (Garaitu gabeak)

*Iosu Uribetxeberriari*
*Gatzari*
*197/2006 doktrinapean bahitutako burkideei*
*jaioterrira itzultzen ari direnei*

## Invictus

***(Mandelak kartzelako une zailetan errezitatzen zuena)***

Gau beltz hondorik gabeko amildegi
Hontatik harago
Han goian inor balego,
Hari esker, naizelako garaiezin.

Halabeharraren atzaparretan
Ez intziri ez negar
Burua dut odoletan
Zut zorigaitzaren kolpeen pean.

Kolera eta lantuzko eremu,
Izuen Gordeleku,
Zigor-urteen mehatxu,
Ez naiz beldurtuko, ez nauzu beldur.

Ez zait ardura ataka nola den estu,
Ez zenbat epaia astun,
Etorkizuna nire esku,
Nire arimaren lemazain, neu.

*William Ernest Henley (1849-1903)*

## Gotorlekua

Aurkitu dugu gotorlekua
gaitz guztien iturria
hipokrita eta atzerakoien
barren-ustel eta barren-gabeen
garun-ustel eta garun-gabeen
ments eta gezurtien gordelekua
bizi ginen ez-munduaren jatorria

Aurkitu dugu gotorlekua
gizarte kapitalistaren Grial saindu
eta iturburu agorrezina
bidegabekeria, nagusikeria
eta larderiaren ernamuina
askatasun guztien hilobia
bizi zareten ez-munduaren copyrighta

Aurkitu dugu gotorlekua
salatari eta gezurtiak saritzen
egia eta elkartasuna zigortzen
berezkotasuna irentzen, maitasuna itotzen
eta irribarrea izozten den zuloa
gizakia desegiteko gizakiak
asmatutako infernua

Aurkitu dugu gotorlekua
eta ez dakigu nola egin
hemendik irteteko
Nora irten ordea? Eta zertarako,
ikasi dugunez geroztik
hor kanpoko errealitatea
hemen barrukoaren ispilatzea besterik ez dela?

## Gaza mon amour

Izugarria
goitik hobeto ikusten dute
soraio
hobeto gozatzen dute
bonbek eta obusek azpian hartutako
soin-adar eta zutoin anabasa

Izugarria
eguneroko albistegian
arrosario santua
estatistika makabroa
hildakoen kopurua
haien arteko
zenbat diren
(ziren)
haur

Giza eskubideak
ez baitira
Gaza eskubideak

Gazako haur palestinar baten biziak
ez du asko balio
datorren lekutik datorrela
biolentzia
gaitzetsi behar dela
diotenen kontzientzia
den mendrenik ere
astintzeko

Giza eskubideak
ez baitira
berdinak edonon
hori guk
–alegia, inperialismo espainiar eta frantsesaren
pean
bizirauten
ikasi dugun
euskaldunok
(katalanek
bretoiek
korsikarrek
okzitanoek
alsaziarrek)
langile jende
eta herritar xumeok–
aski ongi dakigun arren
ez gatzaizkie Gazako anai-arrebei
esplikatzen hasiko

Kartzelan
ezintasunak ito ez gaitzan
sentimenduak itotzen iaioak izanik
galdetu behar izan diot neure buruari
zer den telebista bidezko
Gazako sarraskiaren aurrean
sentitzen dudana:
Amorrua. Errukia.
Amorrua? Errukia?

Amorrua:
erroketa palestinar batek
errepidean egindako zulotxoa
angelu desberdinetatik
behin eta berriro
erakusten digutenean
aurkezleak aurpegi hitsez
israeldarrek ezin dutela hondartzara
lasai joan eta Mediterraneoan must egin
azaltzen duenean
gazatarrei Ramadan hilabetean
harea edateko eta karea jateko ematen dietela
isiltzen duen bitartean

Errukirik ez:
ez da
lurrez, itsasoz eta airez
tankeek, itsasontziek, abioiek eta dronek
gau eta egun
etenik gabe
sarraskitzen dituzten palestinar borrokalariak
haur jaioberriak
nerabeak
eta haiek galdu dituzten gurasoak
zapartatu dituzten sendi osoak
ez ditudalako ezagutzen
baizik eta
soldadu israeldarrek atzera eginarazteaz gain
oraindik ere erroketak jaurtitzeko gai direla jakitean
palestinar izatearen harrotasunaren
indarra

Frantziako Errepublikak
enpresa pribatu bati
ni giltzapetuta gordetzeko
alokatzen dion
ziega honetaraino iritsi delako

## Gaza-Sur-Adour

Gazako zerrenda
hain da txiki mapan
Arabako Errioxaren tamaina
dio egunkariak
Bilbo Handian bi halako biztanlerentzat

Ez dago ordea itsasorik Araban

Hobe
Lapurdiko zerrenda
Baionatik hegoalderantz 40 km
Oiartzungo Rafahko pasaguneraino
hortik ekialderantz Endarlatsaraino
eta berriro iparralderantz
(kostaldetik 5-6 km-tara
Azkaine ekialdeko muga)
Baionaraino
Hori da Gaza

Baionatik Oiartzuneraino
guztia jendez
guztia etxez
lau
ez mendi
ez muino
ez ibai
ez erreka

Baionatik Oiartzuneraino
eraikin nahas-mahas
Hendaia Khan Junis
Ziburu Deir al Balah
Basusarri Jabalia
Hiriburu Beith Hanoun
kale eta kaletxo
hondamendi eta hondakinen gaineko
hiri
kanpamentu
gune
biziraupen leku
Europako hiri cartesiarren zaletuentzat
anabasaren kartografia
Haussmanen amesgaizto
bordel izugarri
inurritegi
Bilbo Handian bi halako biztanle
dio egunkariak

Heltzen duten
inurri pozoitsuen
inurritegi gaiztoa
setiatzen dituzten
israeldarrentzat

Hiria
kale meharrak
kalezuloak
eta lur-azpian
Vietcongaren
tunelak
pasabideak

Gazako kartzelara
biziraupenerako ezinbestekoak sartzeko
Gazako kartzelatik
borrokatzera ateratzeko
Gaza satorrena
bizirik lurperatu nahi duten
palestinar herriaren arnasa-gunea

Pena
lur-azpiko
horietako
pasabide bat
ez dela
Réau-ko ziega honetaraino iristen

Zeren
errukarriak
gu
gure Hondamendi jarraituez geroztik
arnasa egiteko baimena eskatzera
behartuta gaudenok

Errukarriak gu
arbasoen
etxea
kultura
izatea
bizibidea
garaitu eta etsai gaituztenen
eta etsai izan arren garaileekin konpontzea
beste erremediorik ez dagoela uste dutenen
atzaparretan
daudelako

Gazako anaia-arrebok
begira gaitzazue
berunezko erauntsiaren pean eusten duzuen bitartean
begira
eta izan erruki
gu baikara zuen elkartasunaren
eta borroka grinaren beharrean gaudenok

Izan erruki
hizkuntza atzendu genuelako ia
eta egindako ahalegin
erraldoiaren
ondoren
oraindik ere herritarren gehiengoa
analfabetoa delako
gure herriaren suntsipena programatu dutenen
hizkuntzak erabiliz egunerokoan

Izan erruki
bikote bat Espainiak
eta suprefeta bat Frantziak
aski dutelako
(armada, kartzela eta indar errepresiboen itzalean)
oker hartzen ditugun erabakiak zuzentzeko

Izan erruki
duela ia hiru urte
borroka
armatua
utzi genuen arren
deportatuak eta sakabanatuak gauzkatelako
presoak oro

berdin
adin handiko
zein gaixo larri
gure senide eta lagunak
heriotzaren gurpilean kondenatuz

Izan erruki
Oiartzunen
Tuteran
Senperen
berdin
kontrolak jartzen dituztelako
pikoloek
alferrik...
Alferrik?
Ez
Euskal Herrian nork agintzen duen
ez dezagun ahantz

Izan erruki
oraindik ari garelako
(aurkitzen ditugunean)
lurpetik ateratzen
duela 78 urte
fusilatu zizkiguten erkideak

Izan erruki
duela 33 urte
torturapean erauzitako deklarazioak
erabiltzen dituztelako oraindik
(tortura horiek ikertu
onartu

eta gutxiago barkamenik eskatu gabe)
borrokalariak kartzela urte luzetara kondenatzeko

Izan erruki
mesprezu eta umiliazio guzti horien aurrean
ezikusiarena eta ezentzunarena egiten ikasi dugulako

Izan erruki
eta lagun gaitzazue
nor garen ez jakiteraino zatituta
eta biderik aurkitzen ez dugun arren
irribarrea
umore ona
eta Euskal Herria askatzeko grina
ez dugulako oraindik guztiz galdu
ez dugulako oraindik guztiz etsi
ez garelako oraindik eta erabat segadan erori

Izan erruki
eta lagun gaitzazue
egiguzue tunel bat
edo igor iezaguzue
Elkartasunezko itsasontzi bat

*Réau-n , 2014ko abuztuaren 1ean,*
*Gazaren aurkako erasoaren 25. egunean*

## Borrokalekua

Hemen gauzkazue
hautatu guda-lekuan
borondatezko bidean

Intziriz eta negarrez
irriz eta irribarrez
bihotz beratza bizirik dugunez

Injustiziaren kontra
herria biziarazteko
bide zuzenenean

Aurrekoak eta ondokoak
hildakoak eta jaiotzekoak
bakartuta ere ditugu gugan

Izan dadila gauzkaten lekua
askatasun-xendan
soilik herriarentzat geldilekua

## Eguna iristean

***(Arkaitz Bellon Blancoren omenez)***

Ez naiz jaiki zaindariaren hotsa korridorean entzun denean
Gogor jo du atea esna nendin
Ez naiz jaiki zirkinik ez
Ohi bezala ez du goxoan ireki atea
Ohi bezala oihu egin du
Nire izena isekaz lardaska
Alboko kidearenean bezala
Eta aurrekoarenean bezala
Guztienean bezala
Berak edo bera bezalako batek
Egunero bezala
Atean jo du giltzekin
Alferrik ez ditut zabaldu begiak

Long Keshen nengoenean
Lastairan etzanda
Hormari begira
Nola izan zitekeen zaindaria iristean hilda egotea
Pentsatzen egoten nintzen
Pentsatzen egoten nintzen
Ez al da inoiz amaituko infernuko egonaldi hau
Bihar etzi etzidamu
Noiz amaituko da
Bihar etzi etzidamu
Long Keshen bezala
txoriak entzun ditut
Egunsentirik gabe
Lurpean naukate jadanik aspaldi
Ez dut jada negar egiten

Ez naiz jada jipoien beldur
Ez naiz amorratzen jada
Ez naiz amorratzen jada
Jada ni bederatziehun eta laurogei kilometrotara
Deserrian mantentzeko aitzakiarik ez zegoela diotenekin

Non dira nire gogoetak
Non dago ikusteko irrikan nengoen mundua
Non daude nire malkoak

Izan dadila azkena diote orain
Hobiratu aurretik lurperatutakoa
Izan nadin azkena
Ez diote kasurik egin herriaren aldarriari
Euskal presoak etxera
Euskal presoak etxera
(Arkaitz Elorrixora)
Eguna iristean, ez naiz berton egongo
Baina, nuair a thigeann ar lá aithíocfaidh mé iad go mor

## Egonaldia La Pitié-n (I)

Goizaldeko laurak
bost gutxiagotan
mozorrodunak
Idi begitik begiratu zuen
hamaikagarren aldiz
kax-kax jo zuen
eskuargitxoarekin
kristalean

Bezperan ez bezala
ez zen kexurik entzun
Ez, "putain"
Ez, "salauds"
Ez, "foutez-moi la paix
j'ai besoin de dormir"
gaixoaren ahotik

Bezperan ez bezala
ez zuen larrialdiko deirik egin
erizainak bere taupadak neur zitzan
bihotza
izu-laborriz
bularretik aterako zitzaiola
lokartzen zen aldiro
esnatzen zutela
eri zela
bakean utziko zutela
berma zezala
medikuak
eskubideak zituela
eta abar

eta abar
eta abar

Goizaldeko laurak
lau gutxiagotan
mozorrodunak
berriro jo zion
krax-krax
eskuargitxoarekin
bihotzean

Zirkinik ez

Argia piztu
arrapaladan sartu
bele beltzek
inguratu zuten
bele zuriek
eria
presoa
gorpua

Hatzak karotidan
"ez dago zereginik"
erabaki zuen
txabusina zuridunak
aurpegia estaltzen zion
mozorro beltza kentzea ahaztuta
mediku-txostenean
"mort naturelle"
idazten zuen artean

Goizaldeko laurak
eta hamazazpitan
korridorean barrena
zeramaten bitartean
beleek karranka
ohatilak kirrinka
izara zuria krobitxet
hilotzak
“Xabier
Lopez
Peña
euskal
preso
politikoa
nintzen”
aldarrikatzen
zuen

## Egonaldia la pitié-n (II)

Bihar eramango naute
La Pitié-Salpetrière ospitalera

Burdinez zamaturik
gizon armatuek zaindurik
biluztasuneraino miaturik

Bihar eramango naute
Xabier Lopez Peña hil zuten lekura

Nire borondatez
gogo txarrez
aieru goibelez

Bihartik aurrera
uneoro izango dut inguruan
polizia eta zaindari jende
arropa beltz mozorrodun
soraioki bihozgabea

Bihartik aurrera
nire osasunaz arduratuko da
mediku eta erizain jende
txabusina zuridun
adeitsuki bihozgabea

Bihartik aurrera
Odola emango dut tutuetan
Taupadak neurtuko dizkidate
Nire osasuna kartzelako egonaldiarekin
bateragarria dela berrets dezaten

Su eztitan
jarrai dezakedala nik ere
zementuzko eta belar artifizialezko promenada ttipien
bestaldeko belarra ikusi ferekatu gabe
Urtean sei hilez eguzkirik sartzen ez den
hormatzarren atzean ospelduta
Gehienez hamar metrotan behin
bidea ixten diguten ateen aurrean
gure ibilbide etenik gabe herrenduan herbaltzen
hiltzen

## Bidassoa

Fleuve clandestin
Pont, lien
Contrebandier de rêves
de futur et de luttes

Fleuve otage
Plaie, tranchée
Frontière de ma jeunesse
Espoir d'un retour sans ivresse
Ibai klandestino
zubi, lotura
etorkizun, borroka eta
ametsen kontrabandista

Ibahitu
zauri, lubaki
gaztaroko muga
inoizko itzulera esperantza etsia

## Garaitu gabeak

Hainbatetan
erori garelako
dakigu
zer den behin eta berriro
zutitzea

Hainbatetan
zigortu gaituztelako
dakite
zenbateraino den alfer
beren larderia

Hainbatetan
zigortu gaituztelako
dakigu
zenbateraino den alfer
inor zigortzea

Hainbatetan
zanpatu gaituztelako
dakite
behin eta berriro
jaikiko garela

Hainbatetan
agindu digutelako
dakite
ez dugula bizi garen artean
obedituko

Hainbatetan
agindu digutelako
dakigu
ez dugula bizi garen artean
aginduko

Hainbatetan
egin dugulako porrot
dakigu
zein den eder
garaipenaren ametsa

## **Samuel Beckett-en poema bat**

imagine si ceci
un jour ceci
un beau jour
imagine
si un jour
un beau jour ceci
cessait
imagine

*Samuel Beckett*

balitz hau
noizbait hauxe
egun eder bat
balitz
noizbait
egun eder batez hau
ez
balitz

*Mikel Antzak eta Peru Iparragirrek itzulita,*
*2013ko urriaren 5ean,*
*Réauko ikustaldi kabinan*



**Marixol Iparragirre Guenetxea**
1961
Eskoriatza

Atxilotze data: 2004ko urriaren 3a.



Réau Sud-Francilien
Centre Pénitentiaire du Sud Francilien
CR 8
Lieu dit du Moulin à Vent
77550 Réau
Frantzia

## Souvenirs d'enfance

Je ne veux pas regarder en arrière.

Chercher dans le souvenir des moments de plaisir alors que j'étais petite éveille en moi la douleur d'un paradis perdu.

Le temps a adouci mon regard sur la douleur et les souffrances vécues et je considère avec compréhension et un doux sourire les maladresses des adultes qui m'entouraient… mais je suis incapable d'évoquer les beaux moments sans que la tristesse ne me prenne, sans qu'un sanglot ne m'étouffe.

Chercher dans mes souvenirs d'enfance.

La certitude de ne pas être d'ici. De là où je suis maintenant. De là où on me maintient.

D'avoir été arrachée. Arrachée de ma nature. De mon paysage.

Je ne veux pas regarder mon enfance.

C'était la liberté, l' insouciance du temps qui passe.

C'était avant que j'apprenne des grands que le monde, le temps, la vie, tout ce qui m'entourait était limité. Avant que je n'accepte de les écouter.

Explorer, errer, suivre les chemins, s'éloigner de la maison, dans les bois ouvrir des passages entre les fougères, dans la rivière

